








# HEMEN TORTURATZEN DA !!!

























***Une honetantxe  sufritzen duen***
***emakume bat dago,***
***Emakume torturatu bat***
***Askatasuna baino ez maite izateagatik.***
***Ez dakit ez non bizi den,***
***Ez zer hizkuntza duen,***
***Bere azalaren kolorea***
***Hala nola duen izena, baina***
***Une honetantxe***
***Emakume hori, egon badago***
***Garraxi egiten du,***
***Animalia erasotuaren garraxia***
***Entzun daiteke***
***Adiskideak ez salatzearren***
***Ezpainak murtxikatzen dituen bitartean***
***Entzun al duzu?***

***Emakume bakar bat***
***Garraxi dabil, eskuak lotuta,***
***Nonon egon badago.***
***Bakarrik ???***
***Ez ote duzu zeuk ere***
***bere mina nabaritzen?***
***Ez ote darizu odolik***
***kolpeengandik?***
***Ez gaude bakarrik,***
***Une honetantxe,***
***Bai zeuk bai biok***
***Esku lotuta gaude***

*José Agustín Goytisolo-ren poesian oinarrituta, euskaratuta eta generoa aldatuz.*

**Euskal emakumeok, munduko beste herrialde askotan bezala, tortura berezitua sufritzen dugu, sexu-konnotazio eta sexismoz jositako tortura metodoen erabilpenaz.**

**Ondorengo lerroek euskal emakumeek egindako tortura deklarazioak bilduko dituzte. Zaila da horrelako lan batetarako guztiak batzea, beraz, horra hor Andere Bidatz emakume taldeak, prentsan, Interneten, zein liburuetatik jasotako hainbat deklarazio.**

**Lan hau torturatuak izan diren emakume guzti horiei maitasun osoz dedikatuta dago.**





## Lege antiterroristaren aplikazioaren ondorioz atxilotutako emakumeen tortura-deklarazioak:

### EMAKUMEA = PUTA



*«A ellos no les entra en la cabeza el compromiso político que puede tener una mujer», asegura para explicar que las mujeres siempre son tratadas e interrogadas como «putas».*

*"Puta bat hilerokoarekin, ez nau harritzen bere senarrak adarrak jartzeak, guztiekin oheratzen …"*

### EMAKUMEA UMILATZEKO GORPUTZAREN INGURUKO KOMENTARIOAK

*"Lodi nengoela esan zidaten, itsusia nintzela..."*
*"Haietako batek frakak igotzeko esan zidan, ni begiratzeak nazka ematen zielako"*
*" Hau bai nazka ez dauka …"*
*"Titi txikiak ditu, ez da nire gustukoa, zelako gorputz nazkagarria daukan puta honek"*



## HAURDUN USTEAREN MEHATXUA:

***“Hiru gizon zirela esan zidaten, beraietako batek HIESa zeukala baina txandaka bortxatuko nindutela, eta haurdun geratu ala kutsatu egiten banintzen ezin izango nuela beraietako inor ere ez salatu”***

## ANTZU USTEAREN MEHATXUA:

***“ Haurrak izateko aukeraz ahazteko esan zidaten, haurrak izateko ezintasunarekin mehatxatzen ninduten sarritan, eta edukitzekotan, Guardia Zibilarenak izango zirela”***

***“ Ostikada batez antzu utziko nindutela esan zidaten, eta zerbait ekarri zuten, makina bat edo hori lortzeko ”***



## HAURDUN DAUDEN EMAKUMEAK:

***"Zazpi hilabete haurdun zegoela atxilotu zuten. Horrela esan zioten " Aborta dezazun eragingo dizugu. Ostikadak emango dizkizugu, baditugu abortua probokatzeko metodoak eta ez da inortxo ere enteratuko. Azkenean konbultsioak eduki zituen eta torturatzaile batek lasaitu egin behar izan zuen gezurra zela esanez, abortatzen bazuen urduriak jota izango zela"***



## SEME-ALABEI ETA BESTE SENIDEEI BURUZKO TXANTAIAK:

*“ Itaunketa batean kolpeka hasi ziren, erdi itota eta ia konorterik gabe nengoela, batek boligrafo bat jarri zidan eskuan eta zerbait sinatzera behartu ninduen. Gero nire alabatxoa beraien eskuetan utzi nuela esan zidaten, patria potestad delakoa itaunketan zegoen emakume funtzionarioari eman niola esan zidaten”*

*“ Bere semeen aurrean hilko zutela esan zioten. Bere semeak negarrez ari ziren amatxu-amatxu oihukatzen zutelarik. Semeak muxukatzeko baimena eman zioten ikusten zuten azken aldia zela esanez”*

*“Nire familiaren kontrako mehatxuak ere etengabekoak izan ziren: Ahizpa, ama atxilotuko dituztela , bortxatuko dutela ...”*





## SEXU JASARPEN ETA BORTXAKETAK:

***“ Hankak ireki zizkidaten eta sexu organoetan jotzen ninduten (…). 3 guardia zibil sartu ziren. Arropa eranzteko agindu eta biluzik nengoela, gorputz osoa ukitu zidaten bai aurretik eta bai atzetik. Ondoren korrontea ematen zuen makil bat pasatu zidaten zangoetatik, bularretatik, sexu organoetatik. Gero bortxatuko nindutela esan zidate”***

***Galdeketa La Salven hasi zen. Neronek biluzteko edo haiek biluztuko nindutela agindu zidaten. Arropak erantzi nituen. Erratz baten makila erakutsi eta hori eta Guardia Zibil baten zakilaren artean aukeratzea esan zidaten. Makila sartu behar izan nuen nere maginan pixka bat (…) Gau osoan zehar gizon bat zetorren biluzteko agindu eta gero bera masturbatzen behartzen ninduen”***





## JASARPEN SEXUALAK ETA BORTXAKETAK:

*“Makila edo Guardia Zibil baten zakilaren artean aukeratzeko agindu ondoren pistola sartu zidaten maginan. Galdeketa guztiak izan ziren antzekoak, neu biluzik eta nire burua edo beraiena masturbatzera agintzen zidaten.Behin etzanarazi ninduten eta maginan esku edo atzamar batzuk sartu zizkidaten. Ez dakit zenbat denbora iraun zuen baina niri eternoa egin zitzaidan”*

*“ Guardia zibil baten barrabilen gainean eseri ninduten, aurrera eta atzera mugitzen zen bitartean”*

**EMAKUME UGARI IZAN DIRA KOMISALDEGIETAN BORTXATUAK BAI LEGE ANTITERRORISTAREN AZPIAN ATXILOTUAK IZAN DIRENAK, BAINA BAITA INMIGRANTEAK, PROSTITUZIOAREN AKUSAZIOPEAN …**



# TORTURA
# KOMUNIKABIDEETAN IXILDUA IZATEN DA:

EL CORREO

EL PAÍS

EL PAÍS

EL MUNDO



TELECINCO

Noticias de Bizkaia

Deia

eitb

euskal irrati telebista

tve




cuatro

TORTURA SALAKETAK
EZ DITUZTE ONARTZEN
EZ MEDIKU
FORENTSEEK EZTA
EPAILEEEK ERE,
ZERGATIK ???

**Azkeneko aste hauetan hainbat emakume atxilotuak eta torturatuak izan dira. Lan hau, hauen ondorioaren salaketa da. Hona hemen emakumeen deklarazioak:**

## Rosa Iriarte (Iruñean atxilotua):

***Autoan Madrilera bidean dela buruan poltsa jarri diote arnasarik gabe uzteraino. Burua makurtuta egin du Madrilerako bidea oso postura deserosoan.***

***Behin Madrilen zela gela ilun batean eduki dute denbora luzez, eta bertatik ateratzean beti izan du antifaza jarria.***

***Psikologikoki jasan duen jazarpena oso gogorra izan da, bere senideen inguruko mehatxuak izan ditu, bere bizitza pertsonalarekin sartu dira. Oihu ugari egin dizkiote eta zarata ugari entzun ditu inkomunikaturik egon den aldian.***

***Deskarga elektrikoak jartzeko simulazioak egin dizkiote.***

***Ariketa fisikoak eginarazi dizkiote eta postura deserosoetan egotera behartu dute.***

***Poltsa jarri diote arnasarik gabe uzteraino.***

***Beste atxilotuei torturapean egindako galdeketak entzun arazi dizkiote.***

***Eskuak paretaren aurka jarri dizkiote eta bertan hauts zuri bat dagoela ohartu da. Une batetik bestera eskuak lokartzen ari zaizkiola konturatu da. Ondoren hauts zuria hanketara bota diote eta une horretan prakek pisatu egiten diotela sumatu du. Eskuetara ere joan zaio hautsa, eta gerora ura edan duenean, eskuetan zuenak ahoarekin kontaktua izan du eta lo hartu dio ahoak.***

***Epailearen aurrean torturak salatu ditu eta epaileari esan dio deklarazio poliziala torturapean egin duela eta behartu egin dutela beraiek nahi duten hori esatera.***

## Sandra Barrenetxea (Bilbon atxilotua):

***Lau egunetatik bi oso gogorrak izan direla salatu du.***
***Madrilera bidean auto batean sartu dute, bi Guardia Zibilen artean ezarri arazi eta gerritik gora biluztu egin dute. Mehatxu eta irainen artean ukimenak jasan behar izan ditu. Autoan zihoala kolpe eta ukituen artean prakak kendu dizkiote Guardia Zibil batek buruan jotzen duen bitartean, besteak indarra egiten du hankak zabaldu zitzan. Bera hankak itxita mantentzen saiatzen da. Bidaian zehar hainbat aldiz errepikatu den egoera izan da honakoa.***
***Behin Madrilen dela gela txiki batean sartu dute.***
***Kolpe ugari eman dizkiote, postura fortzatuetan edukiarazi dute. Makurrarazi eta zutiarazi egin dute behin eta berriz. Ariketa fisikoak eginarazi dizkiote eta postura deserosoetan egotera behartu dute.***
***Kuleroetan eduki dute. Kamiseta kendu diote eta berriz ere ukimenak jasan ditu.***
***Mahai batean jarri arazi dute. Gorputzaren goiko aldea mahaian apoiatu ondoren hanka artera ur hotza bota diote, soka batekin ipurdia bilduz eta bortxatzeko mehatxua eginez.***
***Poltsa jarri dioten behin baino gehiagotan ia arnasarik gabe utziz.***
***Presio psikologikoak eta mehatxuak ere ugariak izan dira.***
***Mediku forentseari eta epaileari dena kontatu dio, jasandako torturak salatuz.***

## Aniaiz Ariznabarreta (Nojan atxilotua):

Aniaizen aurkako torturak ere bidaian hasi dira. Bi Guardia Zibilen artean jarri dute, esposatuta izan dute eta irain ugari jaso du.
Bidaian biluztu egin dute gerritik gora eta bularrak ukitu dizkiote, irain sexistak jasan dituelarik.
Lehen egunean hasi dira bere aurkako tortura sesio gogorrak.
Gorputza manta batekin bildu diote, goma espumarekin ondoren. Eserita eduki dute, Guardia Zibil bat gainean duela eta bost inguruan irainka eta mehatxuka dituela.
Poltsa egin diote behin eta berriz eta galdeketa saio luzeak izan ditu.
Poltsa askotan estutu diote.
Galdeketa saioak eta antzeko torturak egunero izan ditu, azken eguna arte.
Antifaz batekin eduki dute, kolpe ugari jaso ditu, baita mehatxu eta presioak ere.
Ariketa fisikoak egitera behartu dute.
Galdeketetan biluztu egin dute, bularrak ukitu dizkiote eta bitartean poltsa jarri diote buruan.
Azken eguna arte luzatu dira torturak, azken egunean bereziki gogorrak izan direlarik.
Goitik behera biluztu dute, bularrak ukitu dizkiote eta alua ere ukitu diote Guardia Zibilek.
Mediku forentseari eta epaileari salatu dizkio jasandako torturak.

## Erika Bilbao (Erandion atxilotua):

**Behin Madrilen dela gela ilun batean eduki dute denbora luzez, eta bertatik ateratzean beti antifaza jarrita izan du.**

**Psikologikoki jasan duen jazarpena oso gogorra izan da, bere senideen gaineko mehatxuak izan ditu, bere bizitza pertsonalarekin sartu dira. Oihu ugari egin dizkiote eta zarata ugari entzun ditu inkomunikaturik egon den aldian.**

**Kolpeak eman dizkiote eta postura fortzatuetan egotera behartu dute.**

**Askotan jarri diote poltsa buruan arnasarik gabe uzteraino.**

**Elektrodoak jartzearekin mehatxatu dute.**

**Epailearen aurrean salatu ditu jasandako torturak.**

***Ixilerazten duten errealitate bat, jakin behar den errealitatea*** …




**EUSKAL HERRIAN ZEIN MUNDU OSOAN TORTURATUAK IZAN DIREN EMAKUME GUZTIOI MAITASUN OSOZ ESKAINITAKO LANA**

Gurutze Yanziri eta torturaren ondorioz erahilak izan diren emakume guztioi.